**Uztailak 25: Santiago, apostolua**
***Gotzain-elizako eta Bilbo uriko zaindaria***

**Sarrera agurra**

Senideok: Santiagoren omenez alkartzen gara Jesus Jaunaren inguruan.

Izan gogoan: sarritan zatiketarako erabili izan dogu gure erlijioa, eta "erlijiokeria" bihurtu izan dogu.

Sutsua izan zan Santiago, eta sutsua bere anaia Joan ere: «Trumoi kume» euken ezizen; baina Jesusek leundu egin ebazan, bere ikasle sutsu bihurtuz.

Hurreratu gaitezan geu ere Jaunagana, eta, bere esanetara jarriz, berak bideratu daizala gure su eta gar guztiak.

**Sarrera abestia**

**Aita baten semeok**
sinismen bakar bat dogunok anai artean batu garanok
kantuz gatoz, kantuz zugana, Jauna

Seme gara, bai, baina seme izaten ba ete dakigu?
Anai gara, bai, baina anai izaten ba ete dakigu?
Seme izatera, anai izatera, Jauna, heldu nahi dogu.

**Damu-otoitza**

† Senideok: gure garra eta egingurea onerako barik sarritan banantzeko, zatiketarako, norbere probetxurako erabilten dogu, Jainkoaren nahierak alboratuta. Damuturik autortu daigun gure pekatua:

—Jesus Jauna, zure jarraitzailetzat gizon sutsuak aukeratzen dozuzana. Erruki, Jauna!

—Jesus Jauna, gizakion sugarra gorrototik askatu eta maitasun-sugar bihurtzen dozuna. Kristo, erruki!

—Jesus Jauna, zure ikasle gartsuak, bulartsuak eta atxaki bakoak nahi gaituzuna. Erruki, Jauna!

**Lehenengo Irakurgaia**

Jesusek berak aukeratzen ditu lagunak, jarraitzaileak, eta beragaz egoteko eta bere barri emotera bialtzeko aukeratu ere. Eta begira zelan emoten daben Jesusen barri bere ikasleek.

**Erantzun-salmoaren oharra**

**R/. Malkoz erein baeben, pozez batuko dabe**

**Bigarren irakurgaia (Ohargileak)**

Nahi dogu apur bat gehiago ezagutu gure sinismena, eta, behar bada, gehiago apreziatu? Irakurgai zatitxo honek irakatsiko deusku: goxoa da, benetan! Entzun!

**Ebanjelioa (Mt 20, 20-28) (Ohargileak)**

Zein urrun dagozan gure asmoak Jesusen asmoengandik! Ikasi daigun bere esanetara jarten. Egin deiogun, horretarako, harrerea ebanjelioari, Aleluia abestuz zutunik.

**Eskariak**

† Jainkoaren hitz salbagarri eta su-emoiletik sortu daitezala gure eskariak, uste osoa Jainkoagan jarrita:

—Elizearen alde: bai bere artzainengan, eta baita bere seme-alaba guztiengan ere, gero ta argiago erakutsi daian sinismenaren ondasuna, *Eskatu deiogun*

*Jaunari*.
—Sufritzen dagozan herrialdeen alde: gorrotoak erre ez daizan, eta herrialde aberatsen laguntza eta zorren parkamena lortu daiezan, *Eskatu deiogun Jaunari*.
—Sinismena ospatzeko abaderik ez dauken eliz alkarteen alde: *eliz alkarte* izateaz jabetu daitezan, eta *alkartzea* bilatu daien, *Eskatu deiogun Jaunari*.
—Gure ezinetan, une gatxetan eta nekeetan, errudunak eta atxakiak bilatu beharrean, geure erantzun apala eta eskuzabalekoa bilatu daigun, *Eskatu deiogun Jaunari*.
—Santiagoren omenez alkartu garenon alde: Jaunaren jarraitzaile eta haren barri-emoile gartsu izatea bilatu daigun, atxaki eta bildur eta lotsa guztien gainetik, *Eskatu deiogun Jaunari*.

† Jainko Aita: onartu zeuk eraginda egiten deutsuguzan eskariok, eta egin gaizuz gaurko apostolu. Jesukristo gure Jaunaren bitartez.
—Amen.

**EMOIGUZU, JAUNA,** OGIA JATEKO
bizitza-indarra zuri jarraitzeko. (bis)

[1] Jesus zeu zaitugu bideko janari
gure bizitza osoan arnas eta argi.

[2] Emoiguzu, Jauna, bizitza indarra
lagunak maitatzeko bihotzeko garra.

[3] Zu jatean emon poztasun gogoa
hobeak izateko gurari sendoa.